**Lege Gordailua**
Depósito legal
SS-1471-2012

Euskal Presoen Aldeko Batzordea
Zuatzu, easo eraikina, 4 behea.
20018 Donostia, Euskal Herria.

www.kalerakalera.eus

**Aurkibidea**



## Zuera aztertuz

### GRADU PROGRESIOA ETA BAIMENERAKO OZTOPOAK

Foro Sozialeko Behatokiak euskal preso politikoek bide penitentziarioa egiteko aurkitzen dituzten oztopoak azaleratu ditu monografiko berri batean. Hala, Zuerako espetxeko kasua jarri dute salbuespenezko politikaren paradigma bezala. Espetxe horrek legedi penitentziario arrunta egiteko aukera eman beharrean, ibilbidea bera eta, beraz, lege penitentziarioaren printzipio nagusiak urratzen dituela salatu dute.

Gaur egun bertan dauden 10 presoetatik 5 lehenengo graduan daude eta beste 5 bigarrenean. Zuerako Tratamendu Juntaren jarreragatik, lehenengoek ez dute gradu progresiorik lortzen, eta bigarrenek dagozkien irteera baimenak burutu ezinean segitzen dute.

Aurretik bertan lehenengo graduan zeudenek eta azken bi urteetan gradu horretan heldu diren presoek ez dute jaso gradu progresiorako inolako proposamenik Tratamendu Juntaren aldetik. Batzuek zigorra oso-osorik bete dute lehenengo graduan (Jose Jabier Zabaleta eta Kepa Etxebarria).

Bigarren graduan daudenen egoera ere eskandalagarria da. Hamaika aldiz irteera baimenak eskatu arren, Tratamendu Juntak kontrako iritzia azaldu du beti eta progresioaren aukera erabat trabaturik daukate. Preso hauek ezin dute irteera baimenik lortu eta, beraz, hirugarren gradurako eta baldintzapeko askatasunerako bidea itxita ikusten dute.

Urteetan zehar gobernu ezberdinek, instituzioek eta hainbat alderdi politikok presoei eskatu izan diete bide legala har dezatela dagozkien onurak eta eskubideak eskuratzeko. EPPKren eztabaidaren ostean, euskal preso politikoak bide penitentziarioa egiten hasi direnean, bidea hori oztopoz beteta topatu dute. Batzuetan EEIOren aldetik, besteetan Ministerio fiskalaren aldetik edo Audientzia Nazionalaren aldetik, baina askotan Tratamendu Juntetatik hasten da blokeoa.

# Heriotza berriro

Berrogeitik gora urte dira espainiar espetxeetan etenik gabe daudela euskal preso politikoak. Lehenago ere egon ziren, jakina, baina 1977ko abenduaren azkenetik gaur artean beti eta etenik gabe egon dira euskal errepresaliatu politikoak espainiar espetxeetan, aldi batzuetan 700 ingururaino. 43 urte hauetan euskal preso politikoei zuzendutako jazarpen eta suntsipen politika areagotzen joan dira Madrilgo aldian aldiko gobernuak, epaitegiak, espetxeetako zuzendaritzak... Inolako eskrupulurik gabe gizabidetik urrundu den espetxe politika erasotzailea ezarri zaie euskal presoei. Eta politika horrek ondorio larriak izan ditu kasu gehiegitan: gaixotasun fisiko eta psikologikoak garatzea edo egoera jasan ezina bihurtu zaielako presoak bere buruaz beste egitea dira ondorio horietatik larrienak.

43 urte hauetan, tartean tartean eta sarriegi izan dugu espetxean bertan edo espetxetik gaixorik irten ondoren hil diren preso eta preso ohien berri. Eta amaierarik ez duen jario gaiztoa izaten jarraitzen du.

Joan den urriaren 22an hil zen Asier Aginako Etxenagusia, 44 urteko preso ohi durangarra. 2019ko urtarrilaren 31an kaleratu zuten Asier, gaixotasun larri bat atzeman ondoren bere zigorra etenean utzita.

2004an Estatu frantsesean atxilotu zuten Asier, bere bikotekide Aitziber Coello eta beste kide batekin batera, Coulaine herrian, eta, zortzi urteko espetxealdiaren ondoren, 2012an, Estatu espainiarrera entregatu zuten, ETAko kide izateagatik ezarri zioten zigorra beteta. Estatu espainiarrean beste delituri leporatzen ez ziotenez eta ezin zutenez berriro erakundeko kide izateagatik epaitu, ETAko “kolaboratzaile” izatea egotzi zion Auzitegi Nazionalak, espetxealdia luzatzeko akusazioa espresuki “eraikiz”.

14 urte preso zeramatzala, 2018aren azken aldera hasi zen Asier ondoeza sumatzen. 2019ko urtarrilaren erdi aldera ebakuntza egin zioten eta 31n kaleratu zen Picassent espetxetik,

## Euskal preso politikoei ezartzen zaien espetxe politika gizagabe horrek giza eskubideen gainetik presoen suntsipen fisiko eta psikologikoa bilatzen du

abokatuek eskatu ondoren epaileak zigorra etenean utzita. Kaleratu zutenean urtebete falta zitzaion Auzitegi Nazionalak ezarritako zigorra oso-osorik betetzeko. Beraz, urte bete eta bederatzi hilabete eskas egin du kalean Asier Aginakok.

Kartzelatik irten ondoren bere herrira, Durangora, bisita egin zuen, hainbeste urteren ondoren, baina Valentziara itzuli eta han geratzera erabaki zuen, gaixotasunaren artatzearekin segi eta Picassent espetxean jarraitzen zuten bikotekide Aitziber Coello eta bien haur Haitzengandik ahalik hurbilen egoteko. Martxoaren 15ean ezarritako konfinamendu aginduak ere Valentzian harrapatu zuen, beraz, eta horrek ere, beste presoei eragin zien moduan, Asierri berari eta Aitziberri ere eragin zien.

Kaleratu zutenerako gaixotasuna oso aurreratua zuen eta, ebakuntza “ongi” burutu zen arren, tratamendu eta jarraipen zehatz eta zorrotza egin behar izan zuen Asierrek. Esan behar da aurreikuspen mediku guztiak aurka zituela, eta hala ere, etsipenari amore eman gabe, bizitzeko gogo zirraragarria erakutsi zuen lehen momentutik. Errealista zen, hala ere, eta egoeraren jakitun, baina ekarpen politikoa egiteko gogoa adierazi zuen Asierrek behin eta berriz, non eta zer egin ote zezakeen galdetuz. Horrekin batera, Aitziber eta Haitzekin bisitak egin ahal izatea eta haiekin egotea zituen lehentasun.

Asierren osasun egoera, eta haur txikia zutela kontuan hartuz, abokatuek egindako eskaerari erantzunez, bigarren graduko 100.2 artikuluan sailkatu zuten Aitziber 2019ko ekainean eta arratsaldetan espetxetik irteteko baimenak lortu zituen. Horrela, egunero ordu batzuk elkarrekin igarotzeko aukera zeukaten Haitz txikiak, Aitziberrek eta Asierrek. Gaixotasuna oso larria eta garatua zuenez, tratamendu medikua ere erasokorra ezarri zioten, eta ondorioz fisikoki indargabetuta geratzen zen tarteka. Baina esan behar da ezintasun fisikoa gainditzen saiatzeko indar psikologikoa erakutsi zuela beti, eta momentu bakoitza ahalik sakonkien bizitzeko gogo itzela zuela.

Aitziber Coello bikotekideak ere zigorra ia osorik betea zuen Asierri gaixotasuna atzeman ziotenerako, batera atxilotu baitzituzten, baina 16 urteko espetxe zigorra azken egunera arte, 2020ko maiatzaren 2ra arte zehazki, ordainarazi zioten. Horrek atzeratu zuen, lehenaz gain, bikotearen eta bien seme Haitzen herrira itzulera.

Espetxe urteetan, euskal preso politikoei ezartzen zaien salbuespen politikaren aspekturik maltzurrenak ezagutu zituen Asierrek. Estatu frantsesetik entregatu ostean, Estatu espainiarreko espetxeetan urruntasuna eta sakabanaketa bizi izan zituen, eta urruntasun horrek senideengan duen eraginik nabarmenena ere bai. 2013ko irailaren 9an Aranjuezeko espetxera aurrez aurreko bisita egitera zihoazkion amak eta lehengusinak istripua izan zuten errepidean, Madrilera iristean. Beste auto batek atzetik kolpatu eta beraiena guztiz txikituta geratu zitzaien. Itxuraz zauri larririk izan ez bazuten ere, anbulantzian ospitaleratu zituzten, eta bisitara ezin izan ziren iritsi.

“Gogorra izan zen hurrengoan istripua izandako lekutik berriro igarotzea, eta are gogorrago gauzak aldatzen ez badira mila aldiz handik pasa beharko dudala jakitea, ez diodalako utziko bisitara joateari, edonon egonda ere semea” zioen Asierren ama Amaiak eskutitz batean, istripuaren harira Durangoko Udaletxean aurkeztu zuten mozioa eztabaidatu zen egunean.

Atxilotu zutenetik Estatu frantseseko Fleury eta Joux la Ville espetxeetan egon zela semea gogora ekartzen zuen Amaiak, eta momentu horretan Aranjuezekoan zegoela. “Aranjuezen bisean bisekoak aste egunetan izaten dira; horregatik, lantegian jai eskatu behar izaten dugu, edo txanda aldatu edo ahal duguna egin. Nik ez daukat gida baimenik, gainera, eta bidelagunen bat behar izaten dut beti” esaten zuen.

Honek modurik gordinenean erakusten du sakabanaketa eta urruntze politikaren aspekturik larriena senide eta lagunei dagokienean. Izan ere, gogoan izan behar da, konta ezin ahala istripuetan ehunetik gora senide eta lagun zauritu eta 16 hildako izan direla.

Ehunka kilometroko bidaiak egin beharra izateaz gain, aurrez aurreko bisitak aste egunetan ipintzea baita euskal preso politikoen komunikazioak are gehiago zailtzeko asmatu zuten beste neurri bat. Neurri horrek espresuki zigortzen ditu presoen senideak, lantegiren batean lan egiten dutenak bereziki, edo haurrak edo zaintza ardurak dituztenak... Bidaia luzeen gastu ekonomikoa ez ezik, bisitetara aste egunetan joan ahal izateko lantegietako baldintzak daude, kasu askotan gainditu ezinezko oztopo bihurtzen diren baldintzak.

Espetxean bertan, edo espetxetik gaixorik atera ondoren, hil diren euskal preso politikoen zerrenda modu mingarrian luzatzera etorri da Asier Aginakoren izena. Kalerainforen aurreko zenbakian, Igor Gonzalez Sola presoaren heriotza aipatzean esaten genuen espetxe politika honek eragindako 49.a zela berea. Zenbaki horretan sartzen dira espetxeetara bidean errepideetako istripuetan hil diren senideen izenak, presoei ez ezik senideei ezartzen zaiena delako espetxe politika honen zigorra, eta presoez gain senide eta lagunak ere hil dituelako urrunketa eta sakabanaketa politika honek. Oraingoan Asier Aginakoren izena gehitu behar diogu espetxean bertan eta espetxetik larri gaixorik kaleratu ondoren hil direnen zerrenda horri.

Behin baino gehiagotan salatu dugu espetxeak gaixotu egiten duela eta hil egiten duela. Azken lau hamarkada hauetan ikusi dugu espetxeetako egoera beti okerrera egiten joan dela, bizi baldintzak gero eta zitalago bilakatuz. Espetxe-urteak gehitu ahala, adinean aurrera joan ahala, osasunean horren eragina gero eta nabarmenago azaldu zaie hainbat euskal preso politikori, eta horren adierazlea da azken urte hauetan, eta gaur egun, dagoen preso gaixoen kopurua.

Askotan salatu dugu euskal preso politikoei ezartzen zaizkien salbuespeneko neurriak bizi baldintzak espresuki gaiztotzeko neurriak direla, eta neurri horien ondorioek osasun fisiko eta psikologikoan dituzte eraginak. Eragin oso larriak kasu askotan, heriotzarainokoak gehiegitan. Eta ez dira ahaztekoak espetxeetako osasun arreta eta artatze baldintzak, kasu askotan medikuaren eta gaixoaren arteko konfiantzazko girorik gabekoak, sarritan kartzelarien edota Guardia Zibilaren esku hartzearekin nahasiak daudenak.

Euskal preso politikoei ezartzen zaien espetxe politika gizagabe horrek giza eskubideen gainetik presoen suntsipen fisiko eta psikologikoa bilatzen du. Izan ere, epaileen ebazpenekin kendutako askatasuna eta ezarritako zigorraz gain, espetxe bakoitzeko zuzendaritzak eta bertako kartzelariek aliritzira eta nahierara ezarritako murrizketak, zigor gehituak, mehatxuak, jipoiak eta eguneroko tenkatze egoerak dira askotan presoek jasan behar dituztenak, aurrez aurre dituztenak. Baina epaileek ere, beraiek ezarri eta zaindu behar luketen legedia bihurrituz, eta arbitrarioki baliatuz kasu askotan, presoen eskubideak eta espetxe legediak eskaintzen dituen aukerak mugatu egiten dituzte espetxealdia luzatzeko. Bai gaixoen kasuan, zigorraren hiru laurdenak beteak dituztenen eta adin handia dutenen kasuetan, modu gizagabean zitaldu dituzte euskal preso politikoen espetxealdiaren baldintzak.

Espetxe politika gizagabe hau behin betirako bazter dezaten nahi dugu eta behar dugu. Baina horrekin batera, euskal preso politiko guztiak behingoz kalean behar ditugu, etxean behar ditugu, bizirik eta bizitzeko, biharko Euskal Herria eraikitzen kaletik laguntzeko.



# Mobilizazioak

URRIAK 5

## Atxiloketak onartezinak dira

Kepa Arkauz, Ekhiñe Eizagirre eta Imanol Jaioren atxiloketak salatzeko mobilizazioak egin zituzten Arrasate, Zarautz, Abadiño eta Ziburun. Sarek eta EH Baik deituta, haien askatasuna exijitu eta konponbide garaia dela aldarrikatu zuten elkarretaratze eta mobilizazioetan bildutako ehunka pertsonak. Hurrengo egunean Igor Uriarte euskal preso ohia atxilotu zuten Urruñan, Frantziako lurraldean egoteko debekua duelako. Uriarte, Eizagirre, Jaio eta Arkauz hilaren 7an utzi zituzten aske.




URRIAK 12

## Performancea Hispanitate egunean

Felipe VI. errege espainiarraren eta Cristobal Colonen irudiak lurrean eta burugabetuta geratu ziren Iruñeko erdigunean egindako performancean. Sortuk eta hainbat herrialdetako komunitateek deitua zen ekitaldia, herriak goresteko. "Gora herriak" lemarekin espainiar erreinuaren izaera inperialista salatu eta urriaren 12an "zer ospaturik ez dagoela" gogoratu zuten.



URRIAK 24

## Sarek Donostian konponbidearen aldeko mosaikoa egin du

Presoak Euskal Herrira ekartzea eta zigorraren hiru laurdenak beteta dituztenak zein gaixo daudenak etxeratzea aldarrikatu zuten atzo Kontxako hondartzan 600 lagunek, Sareren mobilizaziorekin bat eginda. Euskal jendartearen nahia erakutsi zuen mosaikoak "Resolution" leloarekin, eta konponbidea lortzeko urratsak egitea exijitu zuen. EAJ, EH Bildu, Elkarrekin Podemos alderdietako eta LAB, ELA eta UGT sindikatuetako ordezkariek bat egin zuten aldarriarekin.

URRIAK 28

## Azken Ostirala

Etxeratek Araba, Bizkaia eta Gipuzkoan Covid 19agatik fase gorrian dauden herrietan azken ostiraleko mobilizazioak bertan behera utzi ditu. Nafarroan, aldiz, segurtasun neurriak gordeta burutu dituzte.

URRIAK 31

## Ernaik kontrol soziala salatzeko mobilizazioak burutu ditu Bilbon eta Gasteizen

Osasun neurriak ezinbestekoak direla argi utzita, horien itzalean "gure eskubideak murrizten dituzten neurriak ere ezartzen ari direla" salatu dute. Horrekin batera, zerbitzu publikoen indartzea, elkar zaintzea eta antolatzea eta krisia kapitalak ordain dezala aldarrikatu dute.



URRIAK 31
## Hamaika Gara ekimenak Altxa! ekitaldia aurkeztu du Durangoko Plateruenan
Gure Eskuk eta beste 23 eragilek bultzatzen duten Hamaika Gara ekimenak "lehen mugarria" jarri zuen atzo Altxa! ekitaldiarekin. Herritarrak aktibatu eta erreferendumaren aldeko sinadura bilketari bultzada ematea helburu zuen ekimenean, eragile sustatzaileek, nazioarteko erreferentziazko pertsonek eta hainbat kulturgilek parte hartu zuten.




AZAROAK 8
## "Irati gurasoekin Euskal Herrira" ekimenak mobilizazioa burutu du Bilbon
Bilboko 30 plazetan aulki moreak jarri dituzte, Irati bere gurasoekin egoteko eskubidea aldarrikatzeko. Horretarako, Euskal Herrira ekartzeaz gain, Zaballako espetxean gurasoentzakwo modulu mistoa sortzea eta euskal espetxeen pean egongo diren erregimen irekiko pisuak martxan jartzea aldarrikatu dute.

AZAROAK 11
## Sarek Ibon Fernandez Iradiren askatasuna eskatu du
Esklerosi anikoitza duen preso lasartearrak positibo eman berri du Covid-19n. Herrian egindako mobilizazioan, Ibonen askatasunaz gain, larriki gaixo dauden presoena ere eskatu dute.



AZAROAK 13
## Urtarrileko manifestazioa herriz herri egingo da
Urteroko urtarrileko manifestazioak formatoa aldatu eta herriz herri egiteko deia luzatu du Sarek. Bizi dugun osasun-krisiaren ondorioz, Sarek uste du ezin duela aurreko urteetakoaren antzeko manifestazio bat egin. Hala ere, presoen eta erbesteratuen etxeratzea aldarrikatzen jarraitzea ezinbestekoa jotzen du, "Bidea gara" lelopean.

AZAROAK 21 ETA 22
## Sarek mobilizazioak burutu ditu Euskal Herriko herri eta auzoetan
Espetxe politika eta salbuespen legedia amaitzeko formatu ezberdinetako ehunka mobilizazio eta ekimen izan dira gaur Euskal Herriko hiri eta herrietan Sareren «Izan Bidea» dinamikaren barruan.

AZAROAK 25
## Indarkeria matxistaren aurkako eguna
Indarkeria matxistari aurre egiteko deia egin du Euskal Herriko mugimendu feministak. Euskal Herriko hiriburuetan eta herrietan egindako mobilizazioetan jende andanak parte hartu du.

AZAROAK 28
## Azken ostirala
Etxeratek eta Sarek hileroko azken ostiraletan egiten diren kontzentrazioak batera deitzeko erabakia hartu dute. «Bizi garen unean merezi du ahaleginak batzea. Euskal gizartea da berriz ere estatuak eta gobernuak mugiarazten dituen motorra», adierazi dute.

AZAROAK 29
## Euskal independentismoak bere apustua berretsi du, Burgosko prozesutik 50 urtera
Eremu independentistaren 80 lagunek manifestu bat ezagutzera eman dute Eibarren. Bertan Burgosko prozesua mugarri bat izan zela gogoratzeaz gain, sakoneko prozesua ez dela bukatu azpimarratu dute.



AZAROAK 29
## Dispertsioak eraildako Sara Fernandez gogoan
Iruñean ekitaldia egin dute Sara Fernandezen eta dispertsioak eragindako beste 15 biktimen aitortza aldarrikatzeko.

ABENDUAK 1
## Ekimenak hezkuntza erdigunera ekartzea eskatzeko
Hezkuntza Plazara dinamikako kideek hezkuntza eta hezkuntza komunitate guztia erdigunera ekar dadin aldarrikatzeko mobilizazio eguna deituta elkarretaratzeak, manifestazioak, bideoak, pankartak, kantuak, argazkiak eta beste hainbeste ekimen burutu dira.

ABENDUAK 6
## Dispertsioak eraildako Karmele Solaguren gogoan
Barañainen ekitaldia egin dute Karmele Solagurenen eta dispertsioak eragindako beste 15 biktimen aitortza aldarrikatzeko.

ABENDUAK 6
## Euskal Errepublikaren aldeko aldarria
Ernaik deituta, ehunka gazte atera dira gaur kalera, espainiar konstituzioaren inposizioaren aurka eta euskal errepublikarako bidea egiteko prest.

ABENDUAK 8
## "Irati gurasoekin Euskal Herrira"
Arriaga plazan sei bizikleta estatiko jarri dituzte eta sei orduz Irati eta bere gurasoak Euskal Herrira ekartzeko eskaerarekin bat egin dute herritarrek, pedalei eraginez. Ekitaldia amaitu dutenerako aise gainditu dute aldez aurretik ezarritako helburua, Aranjuez eta Bilbo arteko distantzia, alegia.

# La utilización de la prescripción

## Como instrumento al servicio de la represión



La entrega de Jaione Jauregi Espina por parte de Bélgica en virtud de la aplicación de una euro-orden solicitada por Estado español es un buen ejemplo para entender la actitud de este ante las personas de origen vasco obligadas al exilio político. Una actitud de venganza que pretende convertir esa situación en una condena a perpetuidad. Un impulso vengativo en sí, pero que obedece con cruel coherencia a una posición política netamente represiva.

Han pasado ya más de siete años de la "Declaración de Aiete" tras la que EIPK (colectivo de las y los refugiados y deportados políticos vascos) hizo pública su decisión de dar el paso hacia la regularización jurídica de su situación como aportación al proceso de resolución y paz que debía ponerse en marcha para construir un marco de convivencia sano. "queremos hacer nuestra aportación al proceso abierto para dar una solución democrática al conflicto que sufre Euskal Herria. Para que ningún ciudadano o ciudadana vasca tenga que huir jamás por razones políticas. La mayoría vasca y muchos agentes internacionales han proc-




lamado que hay que ofrecer una respuesta democrática a la naturaleza y consecuencias del conflicto. Con ese objetivo están estructurando una dinámica innovadora, y nosotros y nosotras hemos adoptado el compromiso de convertirnos en agente activo en el marco de ese proceso…". Un marco de convivencia necesitado de muchos ingredientes que, además de los aportados por presos y refugiados, deberán venir también de otros sectores afectados igualmente por la dureza del conflicto. Cada uno desde su perspectiva, cada uno desde lo vivido y sufrido, pero animados todos por la necesidad de hacer posible un nuevo marco de convivencia. En ese camino EIPK aportaba el que ellos veían como imprescindible: La futura Euskal Herria debería ser sin personas presas y exiliadas por motivaciones políticas.

Desde entonces, han sido más de 170 los exiliados y deportados que han transitado ese camino, volviendo a Euskal Herria y trabajando desde ella para que más pronto que tarde puedan hacerlo todos los que aún permanecen en el exilio e incluso la deportación. Actualmente, con la entrega de Jaione, son 39 las exiliadas vascas, 8 de ellas en situación de deportación.

## El exilio como condena

Jaione, en la entrevista publicada en Berria y Gara, expresaba en varias de sus respuestas una realidad que muchas veces se nos escapa. "No tengo ganas de correr más … de que cada dos por tres me notifiquen un proceso, una petición", "no son suficientes 42 años de exilio, ¿todavía prisión?". Y es que a menudo la idea que tenemos del exilio es una foto fija que tiene que ver con la alegría que nos produjo saber que tal o cual persona del pueblo había logrado huir de la tortura que sistemáticamente suponía una detención. No acabamos de asimilar que aquella huida fue el primer paso en la huida permanente que supone el exilio o la deportación. La persecución contra los exiliados no cesa. Así lo atestiguan las 378 entregas de policia a policia, las 280 extradiciones o euro-

-órdenes, los 27 asesinados por escuadrones de la muerte.... Una persecución que obliga a los exiliados a vivir en la clandestinidad con las consecuencias que ello conlleva. Ocurrió el 18 de Noviembre de 2017 con Javi Pérez de Nanclares en México. El miedo a ser descubierto y entregado a España le llevó a rechazar un ingreso hospitalario, cuando finalmente su estado de salud le obligó a ello ya fue demasiado tarde. Seguir oculto le costó la vida. Sí, el exilio y la deportación son auténticas condenas. Condenas que, además, los diversos Gobiernos españoles, algunas organizaciones de víctimas, Policía y GC, determinados Fiscales y Jueces de la AN, pretenden que sean a perpetuidad. Tras 10 años de cese de la lucha armada, 3 desde el desarme de ETA y 2 desde su disolución no hay por parte española el menor atisbo de búsqueda de la paz, de la verdad, del avance hacia una justicia restaurativa, de buscar mecanismos para la no repetición. Tras el disfraz de una supuesta búsqueda de la verdad sólo se esconde el afán de venganza y la justicia punitiva. Es ahí donde cobra su verdadero sentido la expresión de Jaione "¿no son suficientes 42 años de exilio?".

## Frente a una solución justa más represión. ¿Como lo hacen?

Como decíamos al iniciar estas lineas, la venganza es el motor que lleva a situaciones como la ahora vivida por Jaione, pero lo que realmente está detrás es una apuesta política muy determinada: la de mantener vivo el parámetro con el que siempre lo han abordado, la represión. Y en esa linea tanto los y las presas como las y los exiliados y deportados siguen siendo utilizados como rehenes políticos. Como decíamos al iniciar este artículo la venganza es el motor que lleva a situaciones como la ahora vivida por Jaione, pero lo que realmente está detrás es una apuesta política muy determinada: la de mantener vivo el parámetro con el que siempre han abordado el conflicto, la represión. Y en esa linea presos, exiliados y deportados siguen siendo utilizados como rehenes políticos.

Frente a la apuesta realizada por el EIPK de andar el camino de la regularización jurídica para avanzar hacia una solución justa del conflicto, el Estado ha desplegado toda una batería de medidas para impedirlo, estando en la Audiencia Nacional española las más importantes. Comenzando por la injustificable negativa a facilitar a los abogados la información relativa a la situación jurídica de sus clientes en el exilio, hasta la utilización torticera de la prescripción para convertir el exilio y la deportación en condenas a perpetuidad.

El caso de Jaione Jauregi tiene que ver con esto último, la utilización perversa de la prescripción. Tras leer la entrevista publicada en Gara y Berria no es poca la gente que se pregunta ¿cómo es posible que una persona sea encarcelada por hechos ocurridos hace casi 40 años?

Ocurrió, entre muchos otros casos con Gotzon Telleria, detenido en México el 23 de Febrero de 2017. Incluso los titulares de la prensa española incidían especialmente en el hecho de que quedaban días para que su causa prescribiese.

El pasado día 7, La Razón publicaba un artículo cuyo único objetivo era tratar de justificar la no aplicación de la prescripción en el caso de Jaione. Y es aquí donde nuevamente la situación de Jaiones se convierte en paradigma de lo que ocurre. El 28 de febrero de 2020 la propia Audiencia Nacional española emitió un Auto en el que dictaba la prescripción de unos hechos ocurridos también en 1981 y por los que había sido procesada. Los mismos argumentos que justificaban ese Auto deberían servir para declarar la prescripción de la causa en la que ahora se le pretende imputar. Sin embargo ha sido encarcelada aludiendo que no existe dicha prescripción.

En cualquier tribunal de justicia europeo la causa estaría ganada, pero no podemos olvidar que nos encontramos ante la Audiencia Nacional española, un tribunal directo heredero del TOP franquista cuya función es dar legitimad jurídica a decisiones meramente político/represivas. Lo ha venido haciendo históricamente validando testimonios arrancados bajo tortura y lo sigue haciendo ahora para conseguir, como decíamos, convertir el exilio y la deportación en condenas imprescriptibles, a perpetuidad. O, como es el caso de Jaione, que a la condena del exilio le siga la condena en prisión.

## Es tiempo de soluciones

Hay dos formas de afrontar el actual momento político: apostar por dar paso a soluciones a las consecuencias del conflicto que contribuyan a la construcción de un marco político y social que nos acerque a una convivencia democrática y que abra la puerta a la solución al conflicto en sí mismo o empeñarse en mantener la imposición y la represión utilizando el sufrimiento de presos, refugiados, deportados y sus familias como instrumento que impida cualquier avance hacia la convivencia y la paz. En definitiva, como en tantas otras situaciones, se trata de elegir entre una convivencia basada en el respeto a los derechos de todas las personas o apostar por la negación de todos esos derechos siguiendo con la imposición y la represión como la pauta de comportamiento del Estado.

Un comportamiento que ha servido, entre otras cosas, para el alargamiento de los encarcelamientos (doctrina Parot), para eludir los cómputos de penas en otros estados (ley 7/2014), para alargar hasta el límite de lo humanamente soportable las condenas (ley 7/2003) y para perpetuar la incertidumbre e impedir el derecho al regreso de los refugiados y deportados políticos vascos manipulando los tiempos y las prescripciones. Es, el Derecho penal del enemigo, ese que aplicado por una justicia parcial y de parte, no castiga en base al hecho y los supuestos que el derecho común contempla para la prescripción, sino que castiga al que consideran autor por el simple hecho de haber huido y considerarlo, por tanto, enemigo.




**Neguko arropa berria webgunean eskuragarri**
Nueva ropa de invierno ya disponible en la web

**www.serigrafia.eus/shop/etxerat**

# Herriaren arrazoiaren indarraz, euskal preso eta iheslariak politikoak etxera!

2017ko uztailaren 10ean ipar Euskal Herriko ordezkaritza zabal bat (hautetsi eta jendarte zibileko ordezkariz osatua) Parisi ate joka joan zitzaion. Bidaia hark, justizia ministerioarekin elkarrizketa esparru baten irekitzea ahalbidetu zuen. Baionako deklarazioaren bide orria garatzeko asmoz, salbuespeneko neurrien deuseztapenari ekin zion Euskal Herriko ordezkaritzak alde ainitzetako elkarrizketaren bidez (EPPK, ipar Euskal Herria - jendarte zibil, hautetsi, instituzio - eta Justizia ministerioa).

3 urte baino gehiago pasa dira elkarrizketa esparru hori abiatu zenetik. Bide gorabeheratsua izan da, ipar Euskal Herria eta Frantses estatuaren arteko indar harremanaren arabera aitzinarazten lortu zena. Elkarrizketa esparruko agendaren garapena eten da berriz, askatu beharreko korapilo tinkoenera iritsi delako: euskal preso politikoen etxeratze prozesua martxan jartzearen korapiloaren askatzea alegia.



Irailaren 19a, “bihurgunearen” egun bezala izendatu zen ipar Euskal Herri osoan burutu zen mobilizazio egunarekin. Indar harremana areagotzea helburutzat zuen faseari bide eman zitzaion, zeinek arriskatze politikoa, ar dura eta irudimena eskatzen zituen. Urriaren 17an berriz, desobedientzia zibilaren gainean oinarritutako fasea adostu zen, Bakegileek eta Bake Bideak antolatutako ez ohiko biltzar nagusian, Luhusoko 4. urte mugan lehen ekintza adostuz.

Urriaren 27an berriz, Parisko dei gorteak Xistor Haranburu euskal preso politikoaren baldintzapeko askatasuna berrestea deliberatu zuen. Denon sorpresarako erabat hetsia zirudien bide juridikoari leiho berri bat ireki dio Parisko Dei Gorteak. Garaipen politiko inportantea da, baina are inportanteagoa, ipar Euskal Herriko gehiengo politiko eta sozialak bultzatutako, gogoeta, elkarrizketa eta ildo mobilizatzailearen ondorio zuzena delako.

## Elkarrizketa esparrua

Gorago erran bezala, elkarrizketa esparruan, Baionako adierazpenaren garapena oinarritzat hartuz, salbuespeneko neurrien auziari lotu zitzaion. Ezinbesteko urratsa, euskal preso politikoen auzia konponbide orokorrago batera helarazteko. Eskubideen errespetuan eta bide juridikoetan oinarrituriko etapa berri bat finkatu zen. Honela ekin zitzaion urrunketa eta sakabanaketaren eta DPS estatutuen auziari.

Nahiz eta, etxetik eta senideen ondoan presondegiratua izaiteko eskubidea oinarrizko eskubidea izan, maila honetan pausoak lortzea ez zen bide errexa izan. Lehen momentutik, logika sekuritarioa eta antiterroristaren mugekin topo egin zuen ipar Euskal Herriko ordezkaritzak, baita ipar Euskal Herritik bultzatzen zen dinamikaren kontrako lobiekin ere. Honen ondorioz lineala izan behar zuen etapak, bi blokeo momentu bizi izan zituen. Hurbilketen auzia bera hastearen deliberoa hartzearena, eta bururaino eramaiteko konpromezua hartzearena Frantses gobernutik.

Bi momentu horiek gainditzeko, aktibazio sozial eta kontsentsu indartsu bat eraiki behar izan ziren ipar Euskal Herrian; masa mobilizazio garrantzitsuekin eta hautetsi eta instituzioen babesarekin adierazi zena.

Salbuespen neurrien gainditze agendan, baldintzapeko askatasunen eztabaidan dagoen blokeoan, epaile eta prokuradoreen independentzia dago jokoan; ministerioak ere, independentzia hori errespetatzeko ardura osoa duela gaineratuz. Horregatik, delegazioak bake prozesua aktatuko lukeen politika penal bat sortzearen beharra aintzinatu zion ministerioari.

Hurbilketen auzia aitzina eta bukatzear zihoala, ipar Euskal Herriko delegaritzak 2019ko urriaren 4an aurkeztu zuen erdi bideko bilana eskaini






zuen. Ipar Euskal Herriko lan eskema, aintzinamenduen bermetzat jo zuen ordezkaritzak. Lehen etapa hortan emandako hurbilketak begi onez jo bazituen ere, bilan gazi gozoa egin zuen. Bide juridikoen baitan, baldintzapeko askatasunen edo larriki eri diren presoen askatasun eskaeretan, fiskaltza antiterroristak, fiskaltza orokorrak eta Dei Ganbarak euskal preso politikoen kontra izan jarrera salatu zuen. Azpimarratuz gainera, lehen instantziako epaitegiak, askatzeak onartzen dituela eta Euskal Herritik bultzatzen den bake prozesuak atzera ez egiteko bermea dela. Fase berri bati heltzeko deialdia luzatu zien ipar Euskal Herriko ordezkaritzak, Frantses gobernuari eta ipar Euskal Herriko eragile, hautetsi eta jendarteari: etxeratze prozesua eraikitzeko garaia alegia.

## Ikuspegi sekuritarioa eta antiterrorista, bake prozesuaren etsaia, ipar Euskal Herriko bide orriaren garapenaren aintzinean harresi!

2019ko maiatzaren 17an, ele ederrekin etorri zen Emmanuel Macron Frantziako lehendakaria Miarritzera. Prozesu eredugarria eta lagundu beharrekoa zela adierazi zien ipar Euskal Herriko hautetsiei. Hitz esanguratsuak, Arnagako deklaraziotik urte batera emandakoak, lurralde oso baten engaiamenduaren aitorpen bezala interpreta zitekeena. Etapa berri baten eraikitzearen bezpera izan zitekeenaren esperantza ttipia sortu zuena.

Frantses gobernuaren edo/eta justizia ministerioaren praktikak berriz kontrakoa erakutsi zuen. 2019ko uztailean PNAT-aren (fiskaltza antiterrorista nazionala) sorrera ekarri zuen, haren buru, JF. Ricard euskal aferetan ezaguna den prokuradorea izendatu zuelarik gobernuak. Eta lehen momentutik haren jarrera irmoki finkatu zuen bake prozesuaren garapenaren kontra. Lehen instantzian presoen eskubideen alde doazen erabaki ia guziei dei egiten die. Honela, Jakes eta Xistorren baldintzapeko askatasunak zapuztu ditu, harekin lerrokatua den fiskaltza orokorraren eta Parisko Dei Ganbararen babesarekin. Hala egin du ere larriki eri diren presoen kondenen eteteei ala erredentzio ttipienari sistematikoki dei eginez. Tematze horren aintzinean, lehen instantziako epaitegiak haren argumentazioak zorroztu ditu, Euskal Herrian garatzen den bake prozesuaren baitan (ETA erakundeak eta euskal presoek emandako urrats, jendarte zibil eta instituzioen babesa) kokatuz historia berriz ez errepikatzearen oinarria. Hala eta guztiz mezua argi gelditzen da bake prozesuaren aldekoei begira: ez dago bake perspektibarik, presondegia azken eguneraino ala heriotzerainokoa izanen da. Hau da, Xistor, Jakes eta Ionen kasuan heriotzerainoko kondena efektibo bilakatzearen delibero firmea.

Ezin ulertzekoa den mezua ipar Euskal Herrian. Armagatzeaz geroztik, bake prozesuak gatazka politikoak eragin dituen ondorioei eman beharreko konponbidea orokorra izan behar da, eta mendekutik at eta kontakizunen lehietatik kanpo eta manera inklusiboan eraiki beharrekoa da. Hortaz, ipar Euskal Herrian edo/eta Frantses estatuan dauden estatu sakonen, ala elkarte zonbaiten jarrerak ulergaitzak bihurtu dira gehiengo politiko eta sozialaren baitan. Oso barneratua da gaur, biktima guzien aitortza, dagozkien eskubideak eta euskal preso politikoen etxeratzea, kontrajarriak dauden gaiak baino elkar elikatzen duten gaiak direla. Eta beraz Aieteren 10garren urtemugara heltzen garen momentu honetan, salbuespen neurrien mantentzeak ala areagotzeak, prozesua bera zalantzan ezartzeaz gain, lubakiak mantentzea edo/eta sakontzea besterik ez dakar.

Horiek horrela, Jon, Jakes, Xistor eta Unai-en presondegiratzearen urtemuga kari, etapa berriaren irekitzearen beharrari egokitutako fase mobilizatzaile berri baten eraikizteko apostua egin da.



### Non dago borondatea? 30 urte aski da! Heriotzerainoko kondenarik ez!

Dinamika berriaren aktibatzeak, Covid-19aren osasun larrialdiarekin topo egin zuen. Aski fite, Frantses presondegietan dagoen gain populakuntza dela eta, presondegietan eman daitekeen egoera katastrofikoari aurre egiteko, urgentziazko neurriak hartuko zituela iragarri zuen gobernuak. Bainan, neurri horietatik kanpo utzi zuen, "terrorismoaren" legediaren baitan kondenatua ala presondegiratua den pertsona oro. Orduan, Josu Urrutikoetxea, Jakes Esnal, Xistor Haranburu, Ion Parot, Ibon Fernandez Iradi eta Gurutz Maiza Artola preso mantentzea erabaki zuten.

Ordezkaritzak gogorki salatu zuen delibero hori eta deskonfinamenduaren biharamunean, gobernuak egin ez zuen keinua, galdutako aukera bezala apuntatu zuen. Tonoa altxatzeaz gain, Macronen hitzak bergogoratu zituen eta hauen zintzotasuna galdezkatu ere. PNAT-ak eta Dei gortearen jarrera atzerakoi eta mendekatzaileak sortzen dituen egoerak eta muturrerainoko egoerak apuntatu zituen, epe ertain batean sor ditzaketen arriskuak seinalatuz.

Mezua argi gelditu zen, ipar Euskal Herrian, dagoen blokeo politikoa aktatu zuen, ipar Euskal Herriko agenda politikoari lotutako dinamika berria irekiz. Elkarrizketari bizkar eman gabe, bainan elkarrizketa esparruko agenda eraikitzailea noiz hasiko den itxoin gabe.



### Herriaren arrazoiaren indarra, estatuaren indarraren arrazoiaren gainetik!

Irailaren 19ko mobilizazio eguna, "bihurgune"-tzat jo zuten Bakegileek eta Bake Bideak. Argi hitz egin zuten, "denbora pasatzen uztea, pedagogia... ez dira aski! Bere aniztasunean batzen den jendartea: ez da aski! Iraganeko pisuak oztopatzen ditu etorkizuneko urratsak. Alde bakartasunak estatuen esku hartzea derrigortzen du; arduragabea eta kriminala da inplikazioa errefusatzea. Bake prozesua aitzinatu behar da. Oztopoak gaindituko ditugu! Beste hauturik ez da!"

Frantses estatuaren inmobilismoaren aintzinean, ildo mobilizatzaile berria eraikitzearen beharra aldarrikatu zuten, eta fase hori ekintza sinboliko batekin irudikatu zuten, ehundaka herritarrekin, Estatuko antena den suprefetura harresiz inguratuz. Hastapena baizik ez zela iragarri zuten ere!

Urriaren 17an, Bakegileek antolatutako ez ohiko biltzarrean, bertan hurbildutako eragile, hautetsi eta norbanakoen artean, irailaren 19an irekitako fase mobilizatzailean sakontzeko deliberoa hartu zen. Herriaren arrazoiaren indarra, estatuaren indarraren arrazoiaren gainetik jartzeko helburuarekin. Horretarako desobedientzia oinarrian, irudimen eta konpromezu berriak sortuko duen fase berri baten irekitzeko apostua egin zen. Luhusoko 4. urtemugarako, abenduaren 19an desobedientzia lehen ekintza eta urtarrilaren 9ko manifestaldia iragarri ziren.

### Pareta pitzatua

Urriaren 27an ustegabean hartu gaituen erabaki baten aintzinean aurkitu ginen, pareta pitzatu da! Orain arte erabat hetsia zen Dei Ganbarak lehen instantziako erabakia konfirmatuz, PNAT-a jarri du hartzaile bezala. Garaipen kolektibo eta politiko nagusi bat. Euskal preso eta iheslari politikoen etxeratze prozesuari perspektiba, edo aukera leiho berria irekitzen diona.

Xistorren baldintzapeko askatasunaren aldeko delibero hori, ipar Euskal Herritik bultzatzen dugun lan eskemaren baieztapena da.

Nahiz eta oraindik frogatzekoa den erabaki horrek Jakes eta Jon-en baldintzapeko askatasunari bide emaiten diola, gaur egungo panorama politikoan duen garrantzia neurtzea inportantea da. Erabat hetsia zegoen egoera bati aukera leiho bat ireki diolako, hau da, erabat hetsia zen bide juridikoari perspektiba berria ekartzen diolako.

Hori horrela, Xistorren erabakia seinale bezala kontsideratuz, ildo politiko, diplomatiko eta aktibazio sozialean aurreikusitako plangintza berregokitu egin da. Keinu gisa, abenduaren 19an, konfrontazio politikoa areagotu nahi zuen desobedientzia ekintza suspenditzea erabaki da, borondate politiko baten segurtamena izan arte. Honek ez du desmobilizazio fase bat adierazten, alderantziz, azken urteetako lan eskeman sakonduz, erabaki hau, erabaki juridiko bat baino gehiago izan dadin konfirmazioaren bila joango gara ipar Euskal Herrian. Horretarako, elkarrizketa esparruaren berrabiatzea eta zintzilik utzitako agenda berreskuratzea eta aktibazio soziala mantentzea garrantzitsua izanen da.

Erabat blokeatua zen egoerari aurre egiteko, konfrontazio politikoa areagotzea baino, desblokeatzeko parioa egin du ipar Euskal Herrian gehiengoak, eta pareta pitzatzen lortu du. Aukera leiho bat ireki da, bainan indar harremana mantendu beharko da eta adi egon Xistorren egoera, egi bilakatu dadin Jakes eta Ionentzat, eta euskal preso eta iheslari politikoen etxeratzea prozesua eszenatoki berri batetara eramaiteko parada izan dadin.

# Instituzioak, eragileak eta herri ekimenak

URRIAK 8

### Irati gurasoekin ekartzeko

"Irati gurasoekin Euskal Herrira" dinamikak sinadura bilketa martxan jarri du, martxoaren 8an hiru urte beteko dituen neskatoa eta bere guraso Bea Etxeberria eta Iñigo Zapirainen eskubideak betetzeko eta Zaballako kartzelara gerturatzeko. Itziar Ituñok, Xabier Madariagak, Galder Perezek, Onintza Enbeitak edo Joxe Mari Agirretxe 'Porrotxek', besteak beste, Katixa Agirrek idatzitako dokumentua sinatu dute. Dagoeneko 300 bat lagunek sinatu dute manifestua.

URRIAK 13

### 300 bat legelariren manifestua

Ideologia eta geografia esparru zabaleko 300 legelari inguruk sinatutako manifestuan, presoen eta haien familien egoera hobetzeko 6 puntu nagusi azpimarratu dituzte: urruntze politika bertan behera uztea; gaixotasun larriak dituzten presoak aske uztea, beharrezkoak diren kautelazko neurriak hartuta; Covid-19aren pandemiari aurre egiteko presoen oinarrizko eskubideak gehiago errespetatzen dituzten neurriak hartzea; familia-bizitzarako eskubidea ahalbidetzeko neurriak hartzea; erregimen irekiak, kondena etxean betetzeko aukera eta baldintzapeko askatasunak azkartu eta ahalbidetzea; presoen oinarrizko eskubideak bete eta errespetatzea.

URRIAK 17

### "Elkarbizitza eraikuntzarekin konpromiso soziala"

Aieten egindako agerpenean azpimarratu zuten "elkarbizitza demokratiko" baten eraikuntzarako beharrezkoa dela "askatzeke dauden hiru korapiloetan erabakitasunez" aurrera egitea: "biktimen arteko ezberdintasunen diskriminazioa alboratu, diskriminazio hori gainditzeko behar diren mekanismoak diseinatuz", "egia, justizia eta erreparazioa" bermatuz, baina "memoria kritiko eta inklusiborako" eta euskal "presoentzat konponbide integral baterako pausoak emanez".

URRIAK 21

### Sanchezen Gobernuari interpelazioa

Senideen elkarteak adierazi du 2018ko ekainetik Estatu espainiarrean egindako presoen 63 mugimenduek 58 presori eragin diela, eta hauetatik soilik 12 izan direla Euskal Herrian dauden espetxeetara hurbiltzeko.



URRIAK 23

### Urgentziazko irtenbidea aldarri

Izan Bidea dinamikaren baitan, LAB, ELA, UGT, ESK, Steilas, CGT/LKN, CNT, EHNE, Hiru eta Etxalde sindikatuek Bilboko espainiar Gobernuaren ordezkaritza aurrean elkarretaratzea egin eta Madrilgo gobernuari euskal presoei aplikatzen dieten salbuespenezko legediarekin bukatzeko exijitu diote.



URRIAK 29
**Behatokiak isolamenduei eta Kordobari begira**
Bigarren ale honek bi gai jorratzen ditu: batetik, motibazio politikoko delituengatik euskal preso batzuek isolamendu moduluetan pairatzen duten egoera eta, bestetik, orokorki presoek birgizarteratze ibilbideetan gainditu behar dituzten oztopoen azterketa. Eta, horren lekuko, Kordobako espetxean gertatu dena aztertu dugu.



URRIAK 30
**Foro Soziala EPPKrekin**
Mintzaide biak ados daude bizikidetza demokratikoan urratsak eman ahal izateko oraindik dauden trabak kendu beharraren inguruan: urruntzea, isolamendua, graduen eboluziorako zailtasunak, preso gaixoak, 70 urtetik gorako presoak, zigorrak metatzeari buruzko Europako araudiaren aplikazioa, eta 40 urteko espetxealdi errealen muga jarri zuen zigorrak osorik betetzeari buruzko 7/2003 legetik eratorritako zigor eta espetxe-salbuespenaren berrikuspena.

AZAROAK 3
**Presoen gertukoen sufrimendua jasanezina da**
Puerto I, Puerto III eta Avilako espetxeetara joan ziren bederatzi senideri administrazio-espedientea ireki diete, perimetroan itxitako lurraldeak zeharkatzeagatik. Bestetik, Teruelgo espetxean senide batek bisita galdu zuen larrialdi-egoerako neurrien ondorioz.

AZAROAK 20
**Elkarbizitzaren aurkako lobbyei aurre egiteko deia**
EAEko gobernuari, Nafarroakoari eta gobernu espainiarrari lobby immobilistak urruntzearen amaiera eta presoen bide juridikoa blokeatu ez ditzan esku har dezaten dei egin die.

AZAROAK 20
**“Irati gurasoekin EH-ra”**
Umeen eskubideen nazioarteko egunaren harira, ekimen honek gurasoak kartzelan dituzten umeen eskubideak errespeta ditzaten gauzatu beharreko neurri ezberdinak aurkeztu ditu.

AZAROAK 24
**Torturaren biktimak aintzat hartzeko eskaera**
Nafarroan torturaren errekonozimenduan aurrerapausoak emateko eskaera egin du gaur Foro Sozialak, Mikel Zabalzaren heriotzaren 35. urteurrenean. Biktima hauek milaka badira ere diskriminazio larria pairatzen dutela salatu du.




ABENDUAK 1
**Dispertsioaren gastuei aurre egiteko ekimena**
Etxerat elkarteak eta euskal mahastizainek bat egin dute ‘Urrun daudenengatik, topa!’ izeneko kanpainan. Ardo ekologikoa salduko dute dispertsioaren gastuei aurre egiteko.

ABENDUAK 2
**Nazioarteko bake prozesuetan emakumeen parte hartzeaz gogoeta**
Eremu politiko, sindikal eta sozialeko 80 bat emakumek manifestu bat sinatu dute. “Bakea ez da soilik indarkeriaren ausentzia” seinalatu eta “bakeak demokrazia, justizia soziala eta eraldaketa” esan nahi duela gogorarazi dute.

ABENDUAK 6
**Askatasuna exijituz**
Egindako agerraldian Sarek, Etxeratek eta Jaione Karrera presoaren abokatuak Josetxo Arizkuren Ruiz, berriki bihotzekoa jasan eta bihotzean 4 stent jarrita dituena, eta larriki gaixorik dauden beste preso politiko guztien askatasuna galdegin dute. Hala, abenduaren 7rako manifestazioa deitu dute Iruñean.




ABENDUAK 7
**Behatokia Zuerari begira**
Foro Sozialaren Behatokiak hirugarren txostena egin du. Zuerako espetxean graduen progresiorako eta irteera baimenetarako jartzen dituzten oztopoak jaso ditu.

ABENDUAK 10
**Bazterkeriarik gabeko memoria**
Gasteizen egoitza duen Terrorismoaren Biktimen Memoriarako Zentroaren «planteamendu diskriminatzailearen aurrean», Euskal Herriko hainbat memoria eragilek ‘Memoria osoa, bizikidetzaren alde’ kanpaina aurkeztu dute.

ABENDUAK 11
**Gehiengo politiko eta sindikala urrunketaren aurka**
PNV, EH Bildu, Elkarrekin Podemos-IU alderdiek eta ELA, LAB, CCOO, UGT, ESK, Etxalde, EHNE, CNT, CGT, Hiru eta Steilas sindikatuek adierazpen bateratua plazaratu dute. Euskal presoak Euskal Herriko espetxeetara ekartzeaz gain, aplikatzen den salbuespeneko espetxe politika gainditzea eskatu dute.



## EPPKren historia eta istorio bat

Kolektiboaren, bere osotasunean hartua, egungo osasun egoera, bere ibilbide luzea aztertu ondoren, maila batean, bikaina dela esan dezakegu. Izan ere, espetxe kolektibo politikoren adibiderik ez da ezagutzen Europan edo munduan hain ibilbide luzearen ondoren hain osorik mantentzen denik. Estatu espainiarraren kasuan, GRAPOko en kasua dugu ere, hauek ere EPPKren gisako urte ibilbidea betetzen dutenak; halere, beldurrik gabe lot dezakegu egungo euskal preso politikoen kolektiboa sasi-amnistia aurretik osatua zegoen kolektiboarekin, GRAPO artean existitzen ez zeneko garai hartan. Xehetasun guztiekin, jakina, orduko euskal preso politikoen kolektiboa zabalagoa zelako maila batean (ETAko adar eta Batzar ezberdinak...). Une eta fase ezberdinak igaro ditu Kolektiboak, bai erakundearen ekintzen jardunari lotuak bai estatuak inposatutako fase eta espetxe politikoari lotuak. Belaunaldi ezberdinek osatu dute giza-emakume multzo hau eta fase horiei egokitzea tokatu zaie. 1978tik 1987 arteko militante preso elkartze zabal hura sakabanatua izanen da 80. hamarkadaren amaieran eta hasierako hamarkadan suertatutako barne dinamika asko inposatutako errealitate honi egokitu behar izan dute.

Kontua da, finean, 1978tik honako Kolektibo honek zutik eta osorik iraun duela azken 42 urte hauetan. Espetxe politika erasokorrak eta kriminalak tarteko, gisa guztietako borrokak tarteko, eraso eta tenkadura politika amaigabea tarteko, eritasunak eta heriotzak tarteko...badirau oraindik Kolektiboak. Luze emango zuen honen arrazoia azaltzeko: kolektibotasunaren zentzua bera -bakartze egoera larrienetan ere bizitzen dena-, elkarrekiko elkartasun sentimendu finkoa eta finkatua, elkarrekiko errespetua iritziak iritzi, kanpoko (sendia, lagunak, ingurua, burkideak...) babes eta elkartasun presentzia, unean uneko egoeretara egokitzeko gaitasuna, malgutasunaren lehenestea zurruntasunaren gainetik... Baina errealitate objektiboa dugu Kolektibo honek ia 50 urtez iraun duela bere helburu eta bere herriarekiko loturarekin. Saiatu da estatu, saiatu ere, hamaika trikimailuen bidez (damuketa eskaintzak, urrunketa, bakartze latzak, espetxe arau kriminalak...) Kolektibo hau hausten, puskatzen, akabatzen... baina emaitzarik gabe: ukabila gora ateratzen dira oraindik askatu berriko militanteak, beren sendi eta hurkoek inguraturik. Kolektiboa zatitzeko asmatutako espetxe politikak porrot hutsak bilakatuko ziren: hasierako Kolektiboaren barneko tentsio uneak, eztabaida sutsuak, zatikatze mehatxua... etsaiak zatikatzeko asmoz diseinatutako politikak berak haizeak lastoa bezala eraman zituen.

Gauzak horrela, badago kontu bat sekula ahaztu behar ez duguna; Kolektibo hau pertsonez osatua dagoela, gizon-emakumez, alegia, bakoitza bere nortasun eta zirkunstantzia pertsonalekin. Eta norbanako bakoitza berezia dela, bere historia pertsonalarekin, bere indar gune eta ahuleziekin, bere zoriontasun une eta larrialdi deiadarrekin. Horrela, Kolektibo honen alde zaurgarrienari eman nahi diogu lehentasuna oraingo honetan: eritasunak jotako militanteak, alegia. Eta, jakina, pertsona hauen egoera pertsonalari lehentasuna ematea izan liteke aukera bat baina preso gaixo eta, are gehiago, preso gaixo larrien inguruko kasuak nahiko maiz azaltzen direnez kontrako bidetik joko dugu oraingoan: espetxe sistemaren osasun arloko jokaera Kolektibo honengan azken hamarkada hauetan.

## Hasmentako urte lanbrotsu haiek

Aurreko paragrafo batean aipatu bezala, 90. hamarkadaren hasieran aurkitzen dugun panorama hitz batekin lotzen da: sakabanaketa. Urruntzea, bakartze politika (lurralde ezberdinetan, modulu ezberdinetan...), tentsio uneen biderkatzea (jipoiak, probokazioak, muturreko arau estutzeak...).







Hau guzti hau, esan bezala, gero eta partaide eta pisu gehiago hartzen ari zen kolektibo honen zatikatzea, puskatzea, suntsitzea bilatuz: jokatzen ari zen xake partida politikoaren parte garrantzitsua bilakatu zen etsaiarentzako eta nola edo hala desagertarazi beharra zegoen abertzale munduan eta euskal jendartean artean hain indar bateratzailea biltzen zuen kolektibo hau. Baina, kurioski, atzetik atera zitzaien tiroa: haien ustez hain zatikatua eta banandua zegoen kolektiboko emakume eta gizonek firme eutsi zioten erronkari eta denek bat eginda aurrera egitea lortu zuten. Ordura arteko elkarrekiko desadostasun, ezinikusi eta mesfidantzak etsaiaren errepresio politikaren batera edo medio disolbatzen joan ziren. Zigorrak, beldurtu eta etsipenean sartzea ordez pertsona hauek egoerari eustea eta beren elkartasun izpirituan errotzea lortu zuen.

Testuinguru hau kontuan izanik, 90. hamarkadaren hasierari buruzko erregistro gutxi ditugu lantzen ari garen gaiaren inguruan. Kontuan izan 1978ko urtarrilean hasi zirela presondegiak betetzen, gerora EPPK izendatuko zen militante multzoa osatuz. Gaixotasun eta gaitzei buruzko informazio gutxi zegoen: artean, espetxeratu berriak militante gazteak ziren ia gehienak. Osasuntsuak, beraz...edo! Izan ere, baditugu erregistratuak hamarkada honen hasieran geroztik larritu ziren kasu batzuk: Josu Retolaza preso eibartarra, diagnostiko akasdun eta tratamendua ez egokiaren ondorioz larru minbiziz 1987n kanpoan zenduko zena. Edo Ramón Arzamendi arrasatearra, 1986n bere eritasunagatik askatua izan zena. Hor dugu Joseba Asensioren kasua ere, Herrerako medikuaren arduragabekeriagatik 1986an tuberkulosiaz zendua. Pentsatzekoa da urte batzuk lehenago garatuko zuela gaitza. 1988an, berriz, Mikel Lopetegi tolosarra bere buruaz beste eginda agertu zen bere ziegan eta Juan Karlos Alberdi bihotzekoak jota zendu zen Herrera de la Manchan. Ezin ahaztu ere 1985ean bere buruaz beste eginda hildako Jose Ramon Goikoetxea p-mko militantea.

Beraz, aurrekoan aipatutakoa kontuan dugularik, ezin esan gaztetasuna gaixotasuna eta heriotzaren aurkako salbaguardia denik Espainiako espetxe erresuman. Gauzak horrela, urte haietan hasiak ziren dagoeneko kanpo medikuak preso hauen bisitak burutzen, barnean osasun arloan gertatzen ari zenaren kezka nabarmena baitzegoen. Ondorioz, garbi dago garai hartako espetxeko osasun asistentzia utzikeriaz eta arduragabekeriaz jota zegoela, higiene falta izugarriarekin batera. Baina laister hasiko ziren trabak eta komediak presoen konfiantzako medikuak espetxera sartzeko tenorean.

1989ko ekainean agerraldi bat egin zuten gure medikuek non orduko egoera eta jasaten ari ziren trabak aipatzen zituzten: "..ante las claras deficiencias y negligencias médicas que se han producido por parte del servicio médico dependiente del Ministerio de Justicia. A lo largo de estos años son muchas las consultas realizadas en el interior de las prisiones, no sin grandes trabas. Situación que se ha agravado en las últimas semanas ante la prohibición reiterativa de que estamos siendo objeto para asistir a los presos vascos dispersados por la geografía española". Ikusiko dugun bezala, espetxe zein epaileen jarrera ukatzaile hau denboran zehar mantenduko da ia gaur egun arte.

Argi dagoena da konfiantzako medikuei buruzko jarreraren aldaketa hau ez dela besterik gabe suertatzen. Izan ere, ikusi besterik ez dago zer motako gertakizunak suertatzen ari ziren garai hartan arlo politikoari dagokionez. 1989ko apirilean ETA eta espainiar estatuko aparatuen arteko bilerak eta elkarrizketak eten egiten dira Algerian. Aldi berean, lehen urruntze masiboa suertatuko da: Herrerako ia preso gehienak ireki berria den Sevilla IIra lekualdatzen dituzte. Orduan ere hasiko dira gauzatzen dira bakartze egoera gogorrenak. Eta testuinguru honetan suertatzen da medikuek salatzen duten bisiten trabatze politka. Beraz, hamarkada ordu arteko torloju estutze zorrotzenarekin amaituko da.

## 1990 hamarkada. Urruntze, bakartze, zigor eta erresistentzia urteak

Urruntze eta bakartze politika zabaltzekoaz gain, edo hau dela eta, bizi baldintzen eta osasun baldintzaren inguruko salaketak ugarituko dira eragile askoren aldetik. Sakabanaketak biderkatu egiten ditu espetxeetako osasun asistentziaren arazoak, kartzela bakoitza mundu bat delako. Eta gure medikuek zailago izanen dute presoen osasun egoerak kontrolatzeko eta, lehen zaila izanik ere, bisitak burutzeko. Espetxeak espetxe, kontaezinezko urraketen berri iristen dira medikuengana eta haien lana are zailagoa bilakatzen da: espetxeetako mediku eta agintarien jarrera oztopatzailea medio, besteak beste. Espetxe batzuetako egitura fisikoa hertsia da arras: gutxieneko metro karratuko ziegak, leihoak burdinazko estalki zulatuekin...Eta barne arautegia zorrotza.

Eta heriotzen zerrenda tragikoa berandu baino lehen hasiko da martxan. 1990ko urte amaieran 58 urteko Mikel Zalakain preso billabonatarra hilda agertuko da Martuteneko bere ziegan, bihotzekoak jota. Gaitzaren larritasunaz jabetuak ziren espetxean, uztailan bihotzeko larri batek ospitaleko Zainketa Berezien Unitatera bideratu zuelako; baina hori ez zen inolako oztoporik izan egun batzuk beranduago pertsona hau 500 kilometroko bidaia batean penintsulako beste muturreraino lekualdatua izateko. Martutenera heldu zenerako gaitzak guztiz harrapatua zuen, orduko bihotzerako tratamendu eta errebisioak ukatuak izan zituelarik. Gainera, bakartze ziegetan eduki uten, presio psikologiko larriak jasanez. Egoera honetan, nahikoa izan zen espetxeak ospitaleko kardiologia kontsultara ateraldi bat geldiarazi izana gau horretan bertan bihotzak bereak egiteko. Ez da kasu bakarra, ikusiko dugun bezala, hamarkada horretan beste 5 militante zenduko baitira.

Hamarkada honen hasieratik ugarituko dira osasun arloko eskubide urratzen salaketak: urruntze eta lekualdatze politika, bakartze ziegetako "diskoteka efektua", jipoi estrategia guardia zibil eta funtzionarioen aldetik, espetxeetako medikuen jarrera arduragabe eta salagarria...Aldi berean, espetxe politikaren ondorio psikologikoak nabarmentzen hasten dira: eskizofrenia paranoideak, psikosi maniako depresiboak...Ohartarazten zaie espetxeetako osasun arduradunei, baina alferrik: farmakologia hutsa tratamendu gisa eta askatze eskaeren ukazio sistematikoa. Horretaz gain, gainerako presoei ezartzen zaizkien muturreko bizitza erregimena eta neurri berak ezartzen zaizkie, bakartze zigorrak barne. Une batean, kasuen larritasuna ikusirik, honek espetxeari lekarkiokeen ondorio negatiboa kalkulatuz eta kaleko presioa medio, kasuren baten baldintzapeko askatasuna lortu zen.

Presoen asistentziarako medikuen1992ko amaierako txostenek egoeraren laritasuna azpimarratzen dute behin eta berriz euskal presoen "banan banako suntsitze teknologiaren diseinua" salatzen dutelarik.

Hamarkada honen hasierakoa dugu ere gose greba aldi luze eta gogorra. Muturrerainoko borrokak suertatzen dira bizi baldintza duinen eskaeraren pean, Las Palmasko Salto del Negron, besteak beste, osasun egoera larriak eraginen dituztenak. Ez da ahaztu behar hamarkada honen hasieran zendu zela Sevillano grapokidea, gose greba bere azken muturreraino eraman ondoren. Ohi bezala, espainiar gobernua eta estatu aparatuek entzungor egiten diete gizalegezko eskaera hauei. 1995ean ere errepikatuko dira bizi-baldintza duinen aldeko gose grebak.

Giro honetan, eta Euskal Herrian tentsio handiko uneak bizi direlarik (Lasa-Zabalaren afera, "Basta ya"koen ofentsiba, Aldaiaren bahiketa-presoen aldeko itxialdiak Artzain Onean, atxiloketak, tortura testigantzak eta heriotzak, ekintzak armatuak...) 1995ean presoen aldeko eragile ezberdinek salaketa publikoa egiten dute berriz. Errepikatzen dira salaketak: presoen jipoi etengabeak, bakartze egoera luzeak, lekualdatze surrealistak (10 kilometroko lekualdatzerako 2.000 kilometro korrituak...), gaixo larrien




baldintzapeko ukatuak Inaxio Mendiburu, Axun Sierra...), higiene falta espetxeetan, eskuburdinak ospitaletan... Salatzen da ere urte berean 40 kanpoko medikuen bisita baimena tramitatu zirela eta horietako 29 ukatuak izan zirela. Arrazoiak, betikoak: "espetxearen segurtasuna", gaixoen inguruko agerraldiren batean agertu izana, "MLNV"ren balizko partaide izatea...

1995ean arazo psikiko-psikotikoak dituzten presoei buruzko kezka zabaltzen da: 8 kasu daude Estatu Espainolean eta 4 gehiago Estatu Frantsesean. Eta ordurako heriotzen zerrenda makabroa luzatuz zihoan: Jean Groix militante bretoia Fresneseko presondegian bere buruaz beste eginda eta Pello Mariñelarenak, HIESAk jota; tratamendu egoki eza eta arduragabekeria medikua, berriz ere, heriotza baten atzean. Urte berean zenduko da, baina kanpoan, hilabete batzuk lehenago hiltzera kaleratutako Jabi Gorostiza preso ohi basauriarra. Aipagarria, kasu honetan, bere minbiziaren fase terminalean askatasuna ebatzi beha zuen epailearen jarrera: askatzeko damuketa gisako idazki bat sinatzera behartu zuen ia hilaurren zegoen militantea; Herrerako batzarrari kontsultatu ondoren sinatu eta handik hilabete batzuetara zenduko zen Jabi. Epaile zein espetxe sistemaren zitalkeriaren beste adibide trajiko bat hau ere.

Hildakoen zerrendarekin jarraituz, sistemak ezarritako politika kriminalak beste hiru lagun eramango zituen bere buruaz beste egitera: Jose Mari Aranzamendi Katxue, Juan Karlos Hernando Peli eta Unai Salanueva intsumiso iruindarra.

Baina aipatu beharra dago ere ordura arteko inertzia politikoaren ondoriozko beste fruitu mikatz bat: 1995eko Zigor Kode berriaren ezarpena, preso politikoei bete betean harrapatzen zielarik. Zigor Kode berriarekin, besteak beste, erredentzioak desagerrarazi egin zituzten, espetxeak igaro beharreko urteak murrizteko aukerarik gabe utziz kode penal honekin zigortutako euskal preso politikoak. Bide berean, Euskal Herriarekin duten gatazka politikoari lotutako zigortu egin zituzten, nahiz eta ordura arte espetxealdiaren muga 30, 25 eta 20 urtetan ezarriak izan. Euskal preso politikoen kasuan, zigorraren 3/4ak edo 2/3ak bete ostean kaleratzeko eskubidea ukatzen zaie. Eta, jakina, aldaketa honek segida zehatza izanen du osasun arloari dagokionez. Izan ere, urteen poderioz ohartuko gara estutze juridiko honek presoen espetxe urteei eta adinari lotutako osasun inguruko ondorio larriak ekarriko dituela.

## 2000. Mende berria, egoera zaharra, heriotza zigorra present

Mendearen hasieran egindako balorazioan, espetxea inertzia zaharrekin jarraitzen duela ikusten da. Horrela, 2001ean egindako dosierrean osasun profesionalei buruzko betoak edo trabak berdin jarraitzen dutela ikusten da. Adibidez, 2000 urteko datuak zehazten dira: egin ziren 74 bisita eskaeretatik 34 onartu zirn eta 40 debekatu. Azken hauetan, epaileak 27 onartzen ditu eta 13 ukatu.

Lan berean, espetxeko baldintzak eragindako gaitzak zehazten dira eta azpimarratzen dira elikadura, egitura fisikoa (lesio traumatologikoak) edota "diskoteka efektua" edo muga hertsien ondoriozko gaitz oftalmologikoak. Era berean, gaitz psikologikoak %8ak biltzen dituela azpimarratzen da. Espetxeak, bere egitura eta arautegiarekin, mekanismo bereziak sortzen ditu presoaren jarrerak aldatzeko: indibidualizazioa, damuketa...edo suntsiketa. Eta 2000. lehen hamarkadan ederki beteko dute beren helburua: 2004an Oihane Errazkin, 2005ean Jose Angel Altzuguren eta 2006an Igor Angulo bere buruaz beste eginda agertuko dira beren ziegetan. Denak balio du erre-










sistentzia birrintzeko: bakartze basatiak, jipoiak, konfiantzako medikuen bisita ukatuak, mehatxuak...Nahaste depresiboak eta paranoikoak zaindu beharrean, bere horretan uzten ditu espetxe agintaritzak.

Baina, aldi berean, estatuaren fronte juridikoak 2003. urtean beste oldarraldi bat gauzatzen du. Testuingurua politikoa ere zehaztu beharra dago: Lizarra-Garazi prozesuak huts egin zuen 1999ko amaieran eta ekintza armatuak hamarkadaren hasieran berreskuratzen dira. Beraz, pentsa liteke urrats juridiko berri hori aipatutako giro horrekin ere lotua dagoela. Maila batean, gutxienez. Izan ere, urte honetan 1995eko Zigor Kode berriari erreformak egin dizkioten. Batetik, Euskal Herriarekin duten gatazka politikoaren ondorioz espetxeratutakoentzat, espetxe zigor topea 30 urtekoa izatetik 40 urtekoa izatera pasa zen. Halaber, baldintzapeko askatasunari muga berriak ezarri zizkioten: lehenik, espetxe zigorraren 3/4ak edo 2/3ak espetxealdi limitetik baino kondena osotik kalkulatzen hasi ziren; aldaketa berriokin hainbat kasutan kondizionalaren epeetan sartu baino lehenago espetxealdi limite osoa amaitua izango da. Bigarrenik, 3/4ak edo 2/3ak beteta ere, baldintzapeko askatasunari damutze esplizitua gehituko diote. Beraz, de fakto, bizi arteko espetxe zigorra aplikatzen hasiko dira. Aldaketa honek ondorio nabarmenena honako hau da: espetxe urteen luzatze ikaragarria. Neurri honi beste pare bat gehituko zaizkio 2010etik aurrera: 197/2006 Sententzia (edo oker zabaldutako "Parot Doktrina" delakoa) eta Frantzian betetako zigor urteak ez zenbatzea zigor osoan.

Guzti honen eragina presoen osasun arloan argi dago: espetxe urte luzatze gehiago eta adinaren faktorea. Hau da, salbuespenezko legediak jendarteko arlo zaurgarrienetako bat -presoena, alegia- kolpatuko du berriz ere. Honen adibide dugu Gotzone Lopez de Luzuriaga preso gaixo larriari gertatutakoa. Izan ere, bere gaitzaren larritasun berezia kontuan hartuz (bularretako minbizia) 2007ko abuztuaren 2an Jaengo espetxeko Tratamendu Batzordeak Auzitegi Nazionaleko Espetxeratuen Zaintzaren Epaitegiari baldintzapeko askatasuna eskatzea deliberatu zuen, gaixo larriendako Espetxetako Araudiko 194. eta 90. artikuluak kontuan harturik. Aho batez hartu zen erabakia. Hilabete bereko 10ean, baina, Tratamendu Batzorde berak, zuzendariorde medikuaren boto bakar esanguratsua kontra izanik, abuztuaren 2an ezarritako irizpidea aldatzen du eta Gotzoneren baldintzapeko askatasunaren kontra egiten du. 2007ko urrian argitzen da aldaketa honen benetako arrazoia. Epaileak berak espetxeari ondokoa eskatzen dio: "Zigor kodeko 90.art. Lehenengo ataleko azken paragrafoaren arabera, lege-testu bereko 91 eta 92 art, kontuan hartuz, presoaren jarrerak argi utzi beharko du ez duela jarduera terroristan jarraitzen. Espresuki, presoak bere jarduerak gaitzesten duen deklarazio bat eta indarkeria utziko duenarena ere bai. Gainera, barkamen eskaera berezi bat bere delituaren biktimentzako". Hau da, damuketaren exijentzia argi eta garbia. Jakina, Gotzonek uko egiten dio xantaiari.

## Mende berriko 10. hamarkada Zer egin preso gaixo larriekin? Nola burutu laguntza integralago bat?

Noski, baldintzapeko askatasunaren ezinbesteko baldintza honek (damuketarena) errotik mozten du preso gaixo larrien askatze bide hau. Euskal preso politiko gaixo larriak beren izaeraz jabe dira eta era kontsekuentenen jokatzen dute: ez dute inola ere onartuko xantaia. Eta estatua ere kontziente da ho-

rretaz. Baina estatuak ere badaki gaixo larri hauen benetako larritasunaz: gisa eta estamentu guztietako eta ezberdinetako txosten medikuek horrela baieztatzen dute. Beraz, hautatu beharreko erabaki bat hartu beharra du orduko PSOEko gobernuak: askatze bidea etetea eta hildakoak pilatzea bere curriculumean edo formularen bat asmatzea egoera hau gerta ez zedin. Eta orduan, ordura arte ezarria izan ez den Espetxeratze arindua formula asmatzen dute.

Neurri honekin bai posible dutela gaixo larrienak espetxetik ateratzea, espetxeko administrazioari lotuak geratzen badira ere. Beraz, ez daude guztiz aske, formulazio berriak dioen bezala: espetxeratze arindu batean daude, linbo berezi batean non estuki lotuak dauden espetxe erregimenari. Kaleratze ordutegi mugatua dute, aurretik markatua; ezin dute bere inguru hurbiletik atera eta hala izanez gero, epailearen baimena behar dute; jarraipena egiten dieten osasun zentroek beren osasun egoera jakinarazi beharko diote epaileari eta, bukatzeko eta gogorrena: eskumuturreko edo orkatilarako gailu elektroniko bat ezarria izan beharko dute, jakiteko non dabiltzan aldiro...

2008tik aurrera hasiko dira espetxeratze arindua ezartzen preso gaixo larrien artean, eta 2011 arte ezarriko diete gehienei, PPk Espainiako gobernua berreskuratzen duen arte (azkenotan, Aitzol Gogorzari ere ezartzen diote eta baita Josu Urrutikoetxeari berriki, Estatu Frantsesean). Honako hauei ezarri izan zaie: Marilo Gorostiaga, Anjel Figueroa, Mikel Gil, Bautista Barandalla, Belen Gonzalez, Juan Jose Rego, Jose Luis Elkoro, Mila Ioldi, Mikel Ibañez, Juan Pablo Dieguez, Jose Ramon Foruria, Ibon Iparragirre, Aitzol Gogorza eta Josu Urrutikoetxea. Horietako 4 (Anjel Figueroa, Belen Gonzalez, Mikel Ibañez eta Juanjo Rego) zenduak daude dagoeneko eta gainerakoek beteak dituzte zigor osoa, 3 kenduta: Aitzol Gogorza, Jose Ramon Foruria eta Josu Urrutikoetxea.

Aipatu dugun bezala, espetxeratze arinduaren esperimentuak lau urte eskas iraun zuen. 2011an, PPk gobernuak eskuratu ondoren errotik ezabatu zuen espetxeratze arinduaren aukera: gaixo larriak damuketa ondoren askatzea izan zen bere asmoa hasieratik, eta, bere esku egon zen bitartean, bete egin zuen. Kasu bakar batek ihes egin zion garai honetan: Josu Uribetxeberriarena, hain zuzen. Dema bortitza suertatu zen kasu honen inguruan: gobernuaren gotorkeria, kalearen mobilizazio eta presioa, medikuen txosten irmoak...eta azkenean zaintza epaileak amore eman behar izan zuen, Josuren egoera guztiz larria ikusi ondoren; 2015ean zenduko zen. Estatuak erronka bezala hartu zuen gertakizun hau eta era kontsekuentean joko zuen ordutik aurrera: ezta urik ere etsaiari! Horren ondorioz, hildako gehiago pi-





latuko dira estatuaren zerrenda makabroan: 2013an, estatu frantsesean aldi honetan, Xabier López Peña galdakoztarra zenduko da Pariseko ospitale batean, Fleuryko presondegian akats kardiobaskular bat izan ondoren; 2014an Arkaitz Bellon izango da Puerto Ieko bere ziegan zenduko dena, bihotzeko batek jota; 2017an, Kepa del Hoyori suertatuko zaio bihotz kolpe letala, espetxearen arduragabekeria dela medio; 2018an Xabier Rey preso iruindarra bere buruaz beste eginda agertuko da Puerto IIIko bere ziegan; 2019an, berriz, Oier Gómez eta Jose Anjel Otxoa de Eribe zenduko dira: Oier 2017an zigorra etenda atera ondoren, bizkarrezurreko minbizia dela-eta eta Jose Angel hiru hilabete aurretik baldintzapeko askatasunean hiltzera atera ondoren; azkenik, 2020 honetan bertan, Igor Gonzalez Solari egokitu zaio zerrenda ikaragarri honi azken kolpea ematea. 2017ik zigorra etenda kalean bazegoen ere, Juan Mari Maizkurrena ere aipa dezakegu, 2019an zendua birikak hartzen zizkion sarkoma dela

medio. Ikaragarria 8 urtetan pilatutako heriotza lorratza...!

Osasun eskubidearen urraketek, bestalde, betiko erritmoan darraite. 2008tik aurrera osasun langileek osatutako Jaiki Hadi elkarteak egindako dosierrek horrela adierazten dute urtez urte: axolagabekeria espetxeetan, ospitaleko kontsultak poliziak inguraturik, eskuburdinez lotuak, gaixo psikotikoen bakartzea, lekualdatzeak non espediente medikua galtzen den... Errepikatzen dira salaketak, urtez urte. Eta erritmo berean ere jarraitzen dute osasun profesionalen bisiten debekuak: mendea hasi zenetik 20 kasutan ukatzen zaie presoei konfiantzako medikuen bisita jasotzea. Eta erabaki bera hartzen da presoak artatzera mugatzen diren konfiantzako psikologoekin. 2008an, bat batean, hainbat espetxeetako presoen kasua zeramatzan psikologoari asistentzia-bisita baimena guztiak ukatzen dizkiote; betiko "arrazoia": "...en lo sucesivo y por razones de seguridad no se considera conveniente su autorización por parte de la Unidad de Coordinación de Seguridad". Edo, eufemismoak alde batera utzirik: "...Conocida la pertenencia de la informada a una de las organizaciones del MLNV, es de destacar que los contactos de los internos con personas vinculadas a este entorno incidirá en el mantenimiento de postulados radicales y afines al ideario del referido movimiento por parte de los reclusos, lo que repercutirá de forma negativa en su tratamiento y en el buen orden del establecimiento". 2015an, berriz, ordura arte onartutako eta gauzatutako 8 espetxeetako bisita baimenak debekatzen zaizkio hurrengo psikologoari, argudio bertsuekin.

Alde juridikotik, berriz, erasoak ez du etenik. Jarraitzen dute preso gaixoen aurkako askatasunaren inguruko trabak. Esan bezala, gobernuaren aldetik ukatzearekin jokatzen dute aldi oro, eta baten bat kaleratzen bada epaitu zien salak zigorra eten diolako izanen da. Hor ditugu, kasu, aipatutako Juan Mari Maizkurrenaren kasua, minbiziak jota kaleratutako Ventura Tomé tafallarra edo 2019ko urtarrilaren 31an kaleratutako Asier Aginako durangarra. Bestalde, hor ditugu gaixotasun psikotiko larriarekin dauden presoak -Txus Martin eta Kepa Arronategi- edo IHESAk jota dagoen Ibon Iparragirre, kanporatzearen aldeko hamaika txostenekin baina oraindik espetxearen pean daudenak. Fiskaltza eta epailearen papera ezinbestekoa da egoera negargarri honetan. Aipatzekoa da ere, Frantziako epaile eta fiskaltzaren papera preso gaixo larrien inguruan. Ibon Fdz. Iradirena dugu kasu aipagarrienetako bat. Esklerosi anizkoitza 2013an diagnostikatua, gero eta ezinduagoa, endekapena gero eta aurreratuagoa, epaitegi instantzietatik bere baldintzapeko askatasuna behin eta berriz ukatua. Hasiera batean epaileak izendatutako mediku adituk askatzearen alde egin bazuten ere, instantzia gorenetara iritsirik auzia -eta fiskaltzaren jarrera medio- ukatu egin zioten askatasuna, trikimailu juridiko batzuk medio. Eta ordutik hona bizpahiru aldiz suertatu izan da prozedura bera, atzerapen ulertezinekin eta amaiera berarekin beti: ezezkoa. Nahiz eta instantzia batzuetan epailea bera alde egon. Ez da harritzekoa, beraz, gauza bera gertatzea biziarteko zigorra ezarria duten Jon Parot, Jakes Esnal eta Xistor Haranbururekin. Zigorra oso osorik euskal militanteentzako.

Gaur egungo egoeraren ideia bat egiteko, aski da konparaketa bat egitea: 2009an 8 preso gaixo larri genituen zenbatuak, ia 750 presoen artean. Hamar urte beranduago, 2019an, 20 preso gaixo larri genituen zenbatuak, 250 bat presoen artean. Espetxe urteak, adina, estatuaren itxikeria setatia...Gainera, adierazgarria da laguntza psikologikoa behar dutenen kopuruaren haztea. Arazo honen sozializazioa izan da gure bestelako erronka bat. Izan ere, gure artean tabu izan den gaitz mota honi modu eraginkorrean erantzun behar zitzaion, espetxearen benetako izaera jendarteratzeko eta, aldi berean, gaixo hauekiko laguntza hobetzeko. Horretarako, komunikazio bat helarazi zitzaion Kolektiboari 2009an, arazo hau jakinaraziz eta irtenbide osasuntsu bat bilatzeko. Kolektiboko gehiengo bat arazoaren jabe zen ordurako eta gaitz mota hau isilpetik ateratzea onartu zen. Ondorioz, laguntza mota hau modu normalizatuago batean gauzatu ahal izan da, inguruko guztien ulermen eta inplikazioarekin.

Azkenik, azken hamarkada honetan ere beste ekimen batzuk burutu ahal izan dira. Hala nola, 2012-13 artean egindako espetxe mailako osasun asistentziaren erradiografia bat, non, espetxez espetxe, Kolektibo honen gehiengoaren ekarpen guztiz positiboa egin zen. Datu hau baliagarria zaigu arras, espetxe bakoitzean ze asistentzia maila dagoen jakiteko, ze akatsak edo salatu beharreko utzikeriak, ze jarrerak bertako medikuen aldetik. Honetan, beste arlo askotan bezalaxe, argazki desberdinak jaso izan ditugu: badira espetxe batzuk non asistentzia mota hau guztiz negargarria den, salagarria alde guztietatik begiratuta; eta badaude beste batzuk non artatze ardura txukunagoa den, non bertako sendagileen arazorik ez duten gure medikuekin kolaboratzeko, informazioa partekatzeko. Gutxiengoak dira, jakina, baina garbi dago haien jarrera zuzena dela bai presoekiko eta baita kanpoko osasun profesionalekiko.

Saiatu izan da, azken urte hauetan ere, preso gaixoak ahalik eta estaldura aberatsenen izan dezan kanpoko asistentziaren aldetik. Horretarako, preso bakoitzari dagokion osasun etxeko familia medikuak identifikatzea izan da gure beste ardura bat, bere asistentzia ahalik eta osatuagoa izan dadin. Eta azkeneko erronka konfiantzako medikuen arloarekin lotua dago ere: bai presoak eta bai espetxeak jakin dezan kanpoan baduela sendagile bat bere egoeraz arduratzen dena, edozein zalantzaren aurrean laguntza behar duenerako hor izanen duela, aholkuak emateko beti prest egonen dena eta bere osasun egoeraren jarraipen estua eginen duena.

Luzea da kronika hau, luzea oinaze eta bidegabekeriaren kronika; esperantzarik gabeko kale itsu bateraino luzatu nahi gaituzte, baina elkartasunak ez du mugaz edo harresiez ulertzen eta horretan darraigu.

            

**LARRI GAIXORIK**

- Ibon Fernandez Iradi — Lannemezan - 330km — +17
- Gurutz Maiza Artola — Lannemezan - 330km — +70
- Mikel Otegi Unanue — Valdemoro - 480km — +17
- Iñaki Etxeberria Martin — Topas - 460km — +24
- Mikel Arrieta Llopis — Soria - 260km — +21
- Gari Arruarte Santakruz — Soria - 260km — +17
- Angel Telleria Uriarte — El Dueso - 170km
- Joseba Borde Gaztelumendi — El Dueso - 170km — +18
- Lierni Armendariz G.Langarika — El Dueso - 170km — +20
- Josetxo Arizkuren Ruiz — Logroño - 170km — +21

**+70**

**70 URTETIK GORAKOAK**

- Joseba Arregi Era… — Martutene — +29

            

- Irantzu Gallastegi Sodupe — Huelva - 1000km — +21
- Xabier Garcia Gaztelu — Huelva - 1000km — +20
- Fernando Garcia Jodrá — Huelva - 1000km — +20
- Juan Mari Etxebarri Garro — Sevilla II - 960km — +22
- Iñaki Arakama Mendia — Sevilla II - 830km — +23
- Xabier Gallaga Ruiz — Córdoba - 830km — +22
- Iñigo Guridi Lasa — Jaén - 775km — +20
- Mikel Izpura Garcia — Murcia II - 820km — +21
- José Mari Novoa Arroniz — Murcia I - 810km — +21
- Juan Carlos Iglesias Chouzas — Alacant II - 700km — +21
- Gotzon Aranburu Sudupe — Alacant II - 700km — +21
- Gorka Martinez Ahedo — A Lama - 740km — +23
- Sergio Polo Escob… — Herrera de la Manc… — +21

            

- Iñaki Garces Beitia — Zuera - 245km — +22
- Igor Martinez de Osaba Arregi — Zuera - 245km — +21
- Jose Luis Barrios Martin — Zuera - 245km — +22
- Mikel Azurmendi Peñagarikano — Zuera - 245km — +22
- Maite Pedrosa Barrenetxea — Zuera - 245km — +22
- Guillermo Merino Bilbao — Zuera - 245km — +20
- Jon Igor Solana Matarran — Zuera - 245km — +20
- Alvaro Arri Pascual — Burgos - 215km — +25
- Iñaki Armendariz Izagirre — Burgos - 215km — +22
- Gregorio Vicario Setien — Burgos - 215km — +19
- Aitor Fresnedo Gerrikabeitia — Logroño - 170km — +24
- Fco. José Ramada Estevez — Iruñea — +19
- Karlos Apeztegia — Iruñea — +24

            

- Alberto López de Lacalle Gauna — Teixeiro - Curtis - 600km — +16
- Ainhoa Barbarin Iurrebaso — Valencia III - 600km — +18
- Manex Zubiaga Bravo — Valencia III - 600km — +18
- Idoia Mendizabal Mujika — Valencia III - 600km — +15
- Jon Gonzalez Gonzalez — Valencia III - 600km — +16
- Oskar Zelarain Ortiz — Castelló II - 480km — +18
- Juan Ramón Karasatorre Aldaz — Castelló II - 480km — +19
- Marixol Iparragirre Guenetxea — Brieva - 475km — +16
- Ainhoa Gartzia Montero — Topas - 460km — +17
- Jurdan Martitegi Lizaso — Soto del Real - 430km

            

- Balbino Saenz Olarra — Zaballa — +18

**1**

**1. GRADUA**

- J.Mari Etxeberria Garaikoetxea — Puerto III - 1020km — +18
- Aitor Cotano Sinde — Puerto III - 1020km
- Ibai Beobide Arza — Puerto III - 1020km
- Josu Ordoñez Fernández — Puerto I - 1020km — +19
- Alberto Viedma Morillas — Almeria - 1005km — +19
- Juan Carlos Besance Zugasti — Huelva - 1000km
- Iker Lima Sagarna — Huelva - 1000km — +18
- Iker Olabarrieta Colorado — Sevilla II - 960km — +15

            

- Orkatz Gallastegi Sodupe — Castelló I - 575km — +17
- Pedro Maria Cano Hernandez — Castelló I - 575km — +18
- Beatriz Etxebarria Caballero — Aranjuez - 520km
- Iñigo Zapirain Romano — Aranjuez - 520km
- Juan Manuel Inziarte Gallardo — Topas - 460km
- Itsaso Zaldua Iriberri — Topas - 460km
- Jaione Jauregi Espina — Alcalá - 450km
- Andoni Goikoetxea Gabirondo — Dueñas - 310km
- Asier Borrero Toribio — Dueñas - 310km
- Jon Zubiaurre Agirre — Burgos - 215km — +19

            

- Aitor Olaizola Baseta — Dueñas - 310km — +19
- Aitzol Maurtua Eguren — Dueñas - 310km — +18
- Aitor Esnaola Dorronsoro — Soria - 260km
- Asier Rodríguez López — Soria - 260km
- Roberto Lebrero Panizo — Burgos - 215km — +19
- Ugaitz Pérez Zorriketa — Logroño - 170km — +18
- Garikoitz Garcia Arrieta — Zaballa

**2**

**2. GRADUA**

- Zigor Orbe Sevillano — Puerto I - 1020km — +16
- Irkus Badillo Borde — Alacant I - 745km — +16

            

- Gorka Loran Lafourcade — Dueñas - 310km — +17
- Mikel San Argimiro Isasa — Soria - 260km — +18
- Zigor Bravo Saez de Urabain — Soria - 260km
- Eider Pérez Aristizabal — Zuera - 245km — +19
- José Ángel Lerin Sánchez — Zuera - 245km
- Jose Antonio Zurutuza Sarasola — Burgos - 215km — +16
- Aitor Garcia Aliaga — Burgos - 215km — +19
- Aurken Sola Campillo — Burgos - 215km
- Joseba Segurola Beobide — Burgos - 215km — +17
- Jon Crespo Ortega — El Dueso - 170km — +18
- Egoitz Coto Etxeandia — El Dueso - 170km — +18
- Arkaitz Agote Cillero — El Dueso - 170km
- Juan Carlos Herra… — El Dueso - 170km

            

- Karmelo Lauzirika Oribe — Zaballa — +15
- Oskarbi Jauregi Amondarain — Martutene — +19
- Javier Atristain Gorosabel — Martutene
- Xabier Pérez Aldunate — Iruñea — +15
- Olga Comes Arranbillet — Iruñea
- Unai Fano Aldasoro — Basauri
- Oier Andueza Antxia — Basauri — +19

**Fr**

**FRANTZIAR ESTATUA**

- Ainhoa Ozaeta Mendikute — Reau - 930km
- Iratxe Sorzabal Díaz — Reau - 930km
- Izaskun Lesaka Argüelles — Reau - 930km
- Lorentxa Beyrie — Roanne - 845km — +19
- Itziar Moreno Ma… — Rennes - 795km

            

- Xabier Goienetxea Iragorri — Mont de Marsan - 260km
- Luis Iruretagoiena Lanz — Mont de Marsan - 260km
- Aitzol Etxaburu Artetxe — Mont de Marsan - 260km
- Ekaitz Sirvent Auzmendi — Mont de Marsan - 260km
- Josu Urbieta Alkorta — Mont de Marsan - 260km
- Igor Suberbiola Zumalde — Mont de Marsan - 260km
- Ander Mujika Andonegi — Mont de Marsan - 260km
- Iñaki Reta Frutos — Mont de Marsan - 260km

**EH-KO OSPITALETAN**

- Ibon Iparragirre Burgoa — Besarkada Etxea - Gasteiz
- Kepa Arronategi Azurmendi — Aitamemi ospitalea - Arrasate — +23

**3**

**3. GRADUA**

- Emilio Salaberria… — Martutene — +18

            

     

- 1 — Lehen gradua
- * — Lehen gradua 100.2
- 2 — Bigarren gradua
- 3 — Hirugarren gradua
- Zigor Batuketa
- Gurasoa
- Larriki gaixo

- +70 — 70 urte baino gehiago
- +65 — 65 urte baino gehiago
- +60 — 60 urte baino gehiago
- +30 — 30 urte baino gehiago preso
- +20 — 20 urte baino gehiago preso
- ¾ — Baldintzapeko askatasunerako epeak

etx

